Asteko gaia

# Ziaboga gizonkeriaren bidean

Udaberriro irrikan egoten naiz estropada tenporada noiz iristeko. Zalea naiz aspaldidanik, baino zaleagoa azken urteetan, neskek ere parte hartzen dutenetik. Hasiera batean bitxikeria zena finkatzen ari da urtez urte eta zalantzarik gabe urratsa ezin hobea da. Hala ere, halakoetan itxurikeriatan gelditzeko arriskua oso handia da, oraindik ere gizonezkoen eta emakumezkoen arteko berdintasuna lortzeko bide luzea geratu egiten baitzaigu; areago, tokitan dagoela esango nuke. Bestela, noiz ikusiko dugu nesken traineru txapeldunari harrera beroa egiten Donostiako portua jendez gainezka? Ziur aski Errealeko nesken taldeak Anoeta betetzen duenean.

Ezin da ukatu, orain direla urte batzuetatik gaurdaino aurrerapauso itzelak eman direla kirol munduan emakumezkoak sartzeko. Beraiei besterik ez omen zegozkien ballet edota gimnasia erritmikoa bezalako kiroletatik gizonezkoen eremu sakratuetara jauzi egin dute, apal, zarata handirik egin gabe, baina temati, gaur egun gutxik pentsatzen dute kirol desberdinak sexuaren arabera sailkatu behar dira, eta pentsatzen baldin badute, ez dut uste jende aurrean esatea ausartuko direnik. Gainera, kirol batzutan emakumezkoak fama asko lortu dute, hala nola tenisean edota atletismoan. Gurean bi adibide

esanguratsuak ditugu: Edurne Pasaban eta Jaione Somarribe, errespetatuak eta alabatuak biak.

Tamalez, beste adibide bat dugu: orain dela bi urte Atletic-eko nesken taldea liga irabazi zuen arren, klubeko erresponsableek ez zuten zorionezko gabarra atera nahi. Zenbat su festa, ordea, aurrekoan mutilen taldea final ziztrin batera iristea lortu zuenean! Galduta ere, ez zen falta gabarra atera behar zela esan zuenik! Bilbotarrak direla? Nago hemen, Donostian, berdin jokatuko genukela; hau da, berdin jokatzen dugula. Askotan politikoki zuzenak izateagatik emakumezkoak ere kirolari profesionalak izatea txalotzen dugu, traineruan edo futbol zelaian ikusteak pozten gaituela esaten dugu, alabak kirol desberdinak egitera bultzatzen ditugu, baina... Zurikerian gabiltzala esango nuke. Beti ere bigarren mailako kontua izango balitz: benetako danborrada ez, umeena baizik.

Errua instituzioei eta komunikabideei egoztea erraza da, ez dituztela neurriak hartzen, aspektu ekonomikoa baino ez dutela kontuan hartzen... baino ez. Benetako berdintasuna lortzea herritarren eskuan dago. Gaur egun kirol profesionala merkatuko produktua da, eta emakumeek nezkez lortuko dute aurrera egitea bezerorik gabe, gu gabe. Horrexegatik fundamentala da denok emakumezkoen kirola kontsumitzea, hauxe bultzatzeko modurik onena baita. Nesken txandan ere Kontxa jendez betetzea hasiera polita izan dezake

Kirmentxo